

EGILEA:
**Urtzi Zubizarreta Lizundia**
1983
Donostia

Donostian sortu zen familia langile baten baitan. Bertan, euskaldun eta abertzale hazi zen. Oso gaztetxo hasi zen hartzen Euskal Herriak pairatzen duen gatazka politikoaren kontzientzia. Ondorioz, 18 urte bete eta berehala klandestinitatean borroka egitera pasa zen ETA erakundean. 2005ean Grenoblen atxilotu zuten, eta orduz geroztik espetxean da. Gaur egun Meaux-eko espetxe frantziarrean dute preso. Filosofia ikasketak egiten ari da.

**atara**miñe
EUSKAL ERREPRESALIATU POLITIKOEN
LITERATURA KOADERNOAK

# AURKIBIDEA

Izan nintzena banintz
ez nintzateke hemen izango.

Izan nintzena banintz
han izango nintzateke,
baina ez luke zentzurik izango.

Eta izan naizena zuri esatea
eta izango naizena zuri esatea
ez litzateke beharrezkoa izango.

*Oier Goitia "Yoyo", euskal preso politikoa*

Hiru urte hauetan ondoko ziegan izan dudan burkideak, Urtzi adiskideak, orain egun batzuk olerki liburu honetarako hitzaurrea egitea proposatu zidanean sentipen bikoitz batek nere barrenak aztoratu zizkidan.

Beldurra eta poztasuna parez pare, bata besteari talka eginez. Halere guda honetatik berehala garaitu ahal izan nuen haserako ezinegon edo kezka hori, eta guztiaren gainetik aipatu berri dudan alaitasunak, olerkigilearekiko miresmenak, ate guztiak zabaldu zizkidan, hitz idatzi hauek oharkabean isladatuta geratu zaizkidalarik, hitzez adierazi ezin diren sentimenduen adierazle.

Irakurle zaitugun hori, ohartuko zaren moduan haserako hitz hauek ez dira ez ohikoak izanen, azken finean neretzako behintzat olerki liburu hau ere ez delako.

Zortea izan dut eta era berean ohorea ere, Urtzik eguneroko borroka honetan idazten zituen olerkiak garbira ordenagailuan idazteko. Eta aitortu behar dizut olerkiz olerki, ilunabarreko lasaitasunean irakurtzean, handia nabaritu izan naizela nere txikitasunean, handia bezain berezia, berezia bezain xumea.

Bai lagun hori, eguzkia ezkutatzearekin batera, ondorenean irakurriko dituzun olerkiak barneratzean gaueroko ametsezko hegaldian murgiltzen nintzen.

Eta horixe da azken finean hitzaurre honen funtsa eta nahia. Irakurle zaitugun horri aholku bat ematea, gomendio bat olerki hauen atzean, hitzezko armarri honi nahitaezko esanahia aurki diezaiozun, zu ere egunerokotasunetik at dagoen dimentsio matxino honetan murgil zaitezen.

Lehenik eta behin irudikatu beharko zenuke irakurtzen hasi aitzin, ziega ilun batean zaudela, eta bakardadetik irteteko modua jada aurkitua duzula. Begiak itxi eta ziegako ataga guztiak igaro eta argirantz, askatasunerantz. Horixe baita nere-gure adiskide maiteak behin eta berriz olerki hauetan egin duena. Hegaldia iraganera, orainera eta etorkizunera, duintasunez askatasunaren ametsa errealitate bihurtzera.

*Haimar Altuna Txiki*
*Meaux-ko espetxea, 2008ko abuztua*

## Kartzela ez da tropikala

Hemen ez dago palmondorik.
Ezta behar ere
gerizpean etzateko.

Zertarako errekarik
bizitzaren emari oparoa
lasterka pasatzen ikusteko
oin bat uretan apenas sarturik.

Itsasorik ez da hemen.
Beharrik ere ez.
Urrunera begiratzea bizitza bat dugu,
ikusterik ez denean ere.





Zertarako mendi gailurrik
beherako biderik ez duen maldan
gora egiteko eta,
handitasunean ttipi sentitzeko.

Hemen ez dago amodio erorik.
Ezta behar ere, zeren
bururik gabeko munduan
ez dago eroa baino
aspergarriagoa den arruntagorik.





## Ilunpekoak

Ez ditut nere mendiak ikusten
baina haientzat dira nire begiok.
Ez dut nere itsasoa usaintzen
baina haren kresalaren minez
gordetzen dut poltsiko zulatuetan
hasperen oro.
Begiratzen dut, ikusi ere
baina koloreak bizitza honen
bestaldean daude.
Usaintzearren hartzen dut arnas,
baina hauspoa konturatu gabe betetzea
itsasoratuko ez den ontzia
apaintzea bezalakoa da.
Eta zuri-beltzezko gatibualdian
kolorea dugu iparrerako orratz.

## Harreraz harrera

Lagunik ez duen ziegan
ni naiz errege arrotza.
Biluzirik topatu dut,
horrela ikusteak
lotsatuko bailukeen.
Harrera keinurik ez,
lohi edo odol aztarna itsatsirik
ez da mugitu.
Lehorra behar du…
Nolatan egin dute bide
nere aitzindari
legez kontrako erregearen
odol zipriztinek?
Imajinatze hutsak
ziegako haserre isila
esna lezake.
Hobe bestelakorik sinistu,
elkarren ondoan
bizi behar dugunetik.
Hobe bestelako egiarik
elkar begiratu behar dugunetik.

## Kartzelako neurriak

Ordu bete esaten du erlojuak
baina bisitako ordubetea
beti da erruz motzagoa.
Hilabete bat motzagoa.

Maitearen muxua
gutxitan da hitza bezain motza.
Muxua muxu bat baino
bizitza erdi bat gehiago izan daiteke.
Basamortuko hondarra baino kiskalgarriagoa.
-Edo ziega berri bat baino hotzagoa ere-.

Gosea nekez ase daiteke.
Hainbesterainokoa baita bete beharreko
askatasun zuloa.

Maite zaitut batek ere
ez du nahikoa tokirik aurkituko
hemengo hiztegietan.
Nekez baita kabitzen handitasunik
kartzela huts batean.
Nahikoa baita hitz hits bat
ziega guztiak beterik
kartzela huts bat egiteko.

Baten handikeriak
ondokoa uzkurtzen duen tokian,
bestearen handinahiak
albokoaren bizi nahia
irensten duen lekuan,
handikeria eta handinahia
handitasuntzat dauzkan zuloan,
ezer ez zaigu neurrian,
toki barru honetan dagoen guztia
tokiz kanpo baitago.

## Bakartua

Bakartuak latza du egona,
izate hutsa aurrez baino
ezin du begiratu-eta.

Ezingo da lagunaren sorbaldetan igo
geroak zer dakarren hobeto ikusteko.
Ezingo da lagunaren hitzaren atzean ezkutatu
bereak atera nahi ez duenean.
Ez du lagunaren oinetakoetan sartzerik izango
mundu aske baterantz
bide berriak antzemateko.
Ez du lagunaren itzalik izango
egun kiskalgarrietan.
Ez eta lagunaren berorik
hotzak oraina izozten duenean.

Bakartua da
gela huts bateko
aulki ahaztua.

## Denboraren partida

Batzuetan leihotik begira
ez dakit zer naizen lehenago,
orainean preso
edo orainak askatua
-era erromantikoan bada ere
poesia iraultzaileko hitz goxo eta
odolustuen antzera-.
Ez dakit zer naizen gehiago,
geroan aske
edo geroak preso
-geroak orainari eserlekua
lapurtuko bailiokeen,
nahigabeko instintu nostalgikoz-.
…leihotik luzeegi begiratzean.

## Ene arima

Norberaren etxean
norberaren arima ikusten dela
esan ohi da.
Nik ez dut etxerik.
Baina
imajinatu ahal banauzu
ohe honetan etzanda
liburu bat eskuetan
nire bizitzaren zati handi bat
ikusiko duzu.
Imajinatu ahal banauzu
mahai honetan
egunkaria irakurtzen
nere bizitzaren titularrak
ikusiko dituzu.
Imajinatu ahal banauzu
lanpara honen pean
poema bat idazten
nere bizitzako errima
ikusiko duzu.

Imajinatu ahal banauzu
leiho honetatik begira
nere bizitzaren distantzia
ikusiko duzu.
Imajinatu ahal baduzu
ziega hau ni gabe
nire bizitzaren zatirik laburrena
ikusiko duzu.

Baina nire arima ikusi nahi baduzu
oi…!
Herri berri bat imajinatzerik beharko duzu.

## “Soziala”ren patua

Eguzkiak iluntzen du
itzalpean dagoen piztia.
Itzaletara kondenaturik
itzala du gogoan.
Itzala du gorroto.
Baina itzaletik
bizikiago gorroto du argia.
Itzalaz biziko da
itzal eta argiaren kontra,
Ilun-Betea topatu artean.
Lagun gogaikarria iluna.
Baina laguna finean.
Laguna azkenean.

## Mugaz bestalde

Bizitzatik kanporatua eta,
barruan atera ezinik ordea.
Aterabide bakanen bat bada
baina goizeko sei t´erdietan
bukatzen zaio bidea esnatzean
goizero, goizero…

Eskerrak, munduak
buru mardulak
lepo gainean egokiturik
lapurtu gintuela amaren estalpetik.
Ez da, sei t´erdietan kolpez
bururik erituko digun harresirik.

Gazako harresian jendeak
igarobideak zulatzen darrai.
Halabeharrez…
Ametsek euren patuan
bide egin dezaten.

Buru-kolpez goizero,
oi! Jaun zapaltzaile,
gure ametsek ere sei t´erdietan
amaitzeari utziko dioten eguna!

## Harrizko herri zaharra

Lurrik gabeko herri zaharra
Aberri zahar baten negarra
Betiko aldarri baten beharra
Gaztearen garrasi berriaren indarra
Zaharraren marmarra aberri baten hausnarra
Ortzi argi harrigarri baten izarra
Gerra zahar baten gaurko garra
Herri berri baten biharko zirrara eta iparra.

## Nerean nere

Laketagoak litzaizkidakeen
Baina halakoak ziren
Ene Erresumak:
Beti garaile, garaituak izan artean.

## Arrate

Arrateko elizako frontoi berezia
nuen maite
jata zait baino normalagoa
zitzaidan garaian,
mahaia arrotz samarra zenean
mahaixa-ren ondoan.
Arratera igotzea nuen maite
amama eta aitxitxa guztiak ikusi ondoren
-Eibarren amona eta aitonarik ez baitago-.
Ez nituen Kalamuako lubakiak ulertzen.
Saltoka pasatzen nintzen
berdinak ziruditen bi ertzetatik,
Untzagara jaitsita ez zelan, ez nola,
baizik eta cómo hitz egin behar zen
ikusi nuen arte.
Antza denez lubakiaren alde bat
ez zen alperrik gehiago odoldu,
eta odolkia eta odolostia
hitz ziurrak ez badira
morcilla eskatuta amaitzen da gosea
Arrateko ostatuan.

## Jaungoikua, lege zaharra eta zilborra

Txapela eta atorra
mendian gora
ni nauk euskaldun jatorra.
Askatasun deiaren bila beti
gora begiratzen,
eta ageri zaidak zilborra.
-Gaixoa edo bertutea?-.
Gosea aldarri diat
ta badaezpadan ahoa betea.
Edozertarako nagok,
bihotza aberrian eta Goikoan.
Baina, gogoratu nauk!
Partida diat eta
ez nazak dei igandean.

## Ireki hegoak



Zoaz, arrano gaztea
guda lubakietako kanta ikastera,
zoaz gure guda zelaietara
haiekin negar egitera.

Zoaz, arrano mardula
kartzelak gorde duen
nahikaria askatzera,
zoaz Kantauri itsasora
arbasoen hatsa entzutera.

Zoaz, arrano galdua
gure ur-lasterretako errekarriei
gudari hilen odol isuriak
noranzko bidea duen galdetzera,
zoaz gure mendi magaletara
konspirazio haizeak ehizatzera.

Zoaz, arrano zeruetako
gure lurraldera
kabitu ez zeran habietara,
zoaz eta begiak ireki artean kantaiozu
oraindik esnatu ez den herriari.

## Bakeak

Nola daiteke edan
hertsitako iturritik.
Nola eskuaz harrapa
arnastu beharreko hatsa.

Zain da hitza
gutik ulertzen duena.
Zain herria
ez dena desira duena.



Zertarako bakea
ahoan azukre koxkor desegingarria.
Zertarako itxaron
itxaroten gaituena.

Nola agurtzen da bakea
atari bakoitzean bat dena.
Nola agurtzen du bakea
bakearen atarira
odoletan garbi paratu zaionak.

## Gure demokrazia

Hain gara demokratak
askatasuna bidean ahaztu dugula.
Hain da argitsua gure demokrazia
itzala besterik ez diogula eskaintzerik
ikusi ez arren
gurea zen askatasunari.
Hain da perfektua gure demokrazia
askatasunaren beharrik ez duela.
Hain da azkarra gure demokrazia
askatasunak nekez harrapatuko duela.
Hain da askea gure demokrazia
askatasunetik edan edo ez
egarriaren araberako hautua duela.
Hain gara askeak gure demokrazian
askatasuna demokratikoki bozkatzen dugula.

Hain gara inozoak

## Nahigabearen bi aldeak izanik…

Oinaze orok nahigabea dakarkit
eta horregatik diot aiherra
fusilaz eskuaren luzapen bat egiteari.

Oinaze ororen amaierak
bakea dakarkit
eta horregatik dut eginen fusilaz
nere eskuaren luzapen bat.

Eskua erre didan gaurko nahigabea
gaurko bakerik gabeko
maitasunak laxatzen dit,
biharko nahigaberik gabeko
maitasun baketsuaren ordainetan.

ETA-rra bat naiz
eta ez da moral minberatuz
ordaintzen den mailegua nerea.
Nere mailegua bestelakoa da.

## …Mailegurik ere badut

Nori eskerrik eman badut.
Alabaina esker txarra omen da
eskerrak ematea, jasotakoaren ordainetan
eskerrak nahikoak ez direnean.

Haiekin nere mailegua.

## Hodeiek daramate

Hodeietan naiz geratzen
zaizkidan arte joaiten.
Goizeko argi beroak puzturik
gaueko ilunerantz doaz etengabian
oroitzapen oldarkorrak utzirik.

Hodeietan naiz geratzen
zaizkidan arte joaiten.
Haizearen gatibu
geroan oroitzapen hilotz.

Hodeirik bada geratzen
oroitzapenik ez zait gailenduko.
Nire olerkien entzunaz
bizitzara naute gonbidatzen.

## Galdu gabe haria

Egunsentia ikusi nahi duzu.
Ilunabarra duzu topa ordea
esnatze berri aldi oro.
Edertasun herrena.
Dohatasun nagia.
Egun bizienetan gaitz erdia.

## Merezimenduz gara

Zerga latzak
ohi ditu kari handiak.
Merkealdirik ez
irri bat sufritzen dakien herriarentzat.
Hertsiak dira orbainak.
Haatik utz nazazu
zure irriari begira.
Orbainek gordetako zerga latza.

## Libertatea

Joan zara urrutira
inoiz utzi ez duzun tokira.
Nire gogoaren adatsak orraztu dituzu.
Amets korapilatu ederra
zut! ernatu duzu.
Zilegi ez zena
legez astindu duzu.
Burdin barra dantzariak
zurrundu dituzu.
Inoiz utzi ez duten forman.

## Alperrik baina

Ez dut inorako asmorik
nitaz nahi ez duenik.
Orojakile ez naiz
baina batzuetan badakit.
Zergatiei erantzunik badut
eta herren egiten dute askotan.
Egiarik ba al dago
atzeko aterik gabe?
Inork egin ez duen soinurik
ba al da isiltzerik?
Agian ni naiz…
edo akaso zuek zarete
orro berri bat eginaz
oihartzunarengandik ihesi.

## Denboraren bahiketa

Hitz idatziak
elkar nahaspilatu dira.
Hizkiak hitza desobeditu.
Esaldiak lausotu.

Denbora, umore bihurrizko
proposatu zaizu ordean.
Ez zera joan
baina etorri da.
Hala ohi du hark.
Hitz egiten du,
erraiten du,
gogoz edo bortxaz,
zain egoten ez baitaki.
Aitzinerantz zaitu beti
begiak itxita ere,
gogoa atzora biratu arren.

Irakurtzea ezina otu zaizu.
Liburuaren aldarte kapritxosoa ote da.
Zure begiak ote dira.
Edo agian zure gogoaren nekea besterik ez.

## Hostobete

Garaiagoa den Itxaropen zurtoinak
erregutuan, itzalean uzten du
enbor sendo geldiezineko ezina.
Udazken eta negu krudelenetan
betikotasunez loratzen dirauen Itxaropena.

Zure azal leunak
nirean lirain egingo duen egunaz.
Gure bihotzek esku-elkartuz
hasiera eman zioten egunari
bukaera emanaz.

## Eguneko lehen printza

Esnatzen den eguna
eguzkiarekin lehen hartu-emana.
Zer esan nahi dit
irri horrekin baina?
Azalpen bila eta bila
galduta nengoke
erantzuna zu ez bazina.

## Mugetatik

Esnatzearen ekina
Hasperena bezain arina
Muga ikusgaitz fina
Haize hotz arrotz oraina
Zure leun ezkutuetatik
Orainerako mina.

## Txoria txori eta nomada

Malkorik merezi duen
sentimen aunitz ditut,
aurpegi, irribarre aunitz,
lur zein zeruranzko begirada,
norabide orotarako keinu,
hitz aunitz ditut:
isilak, laburrak, astunak,
xeragarriak, xerkariak,
arrotzak, garrasiak,
nere bi begi lehorretan.
Lehorrak beti
euritan ere basamortuak.
Egarritan desagertzen dira
txori galduak basamortuetan.
Edo uholdeetan itoak.

## Amets hura

Noski badaukadala
itzarririk egin ohi den ametsik,
bi, hiru, bost… hamaika!
Zein baino zein ederragoa.
Baina bakarra dut
hamaika baino handi
ederragoa.
Haren bide
odoletan egiteaz
ordainik dugu zoria
eta orbainez zoriona.

## Ezaren aldea

Gogoaz bizitza bat egitea
ez da erraza.
Baina barrote artetik eskua aterata
ezin harrapatu daiteke
haizeak darraien bizi kordelik.
Usain zipriztinik bai.
Kolore zantzurik ere
itzalik gabeko egun oskarbietan.
Euri tantez ez du inork ordea
pitxar egarriturik bete.

## Historian igerian

Nere bizitza historia balitz
ez nuke berebiziko interesik gabeko
etorkizuna izan nahi.

Nere bizitza historia balitz
zaharra behar luke,
neure buruarekin ispilu aurrean
bostekoa luzatzekotan-edo.

Nere bizitza historia balitz
herri atsekaberik ederrena
nahi nuke izan.



Nere bizitza historia balitz
berriz idatziko nuke,
baina historia nire bizitza da
eta damu ere ezin ninteke.

Nere bizitza historia balitz,
nere bizitza eta historia…
Denbora, hats luze bat
besterik ez balitz bezala,
historiara kondenaturiko
itsas lami tristeen ikuskari.

## Itsasoaren baitan

Bizi arrazoi bat
mundura zabaltzerik balego
itsas bazterrean irekiko nituzke hegoak
itsasoaren taupadekin bat egin arte.
Itsasbeherak sortzen utzi gintuenaren
hondar zimelduak
hurrengo itsasgorak bere baitan har ditzan
irekiko nioke ene gogoa.
Sartalderik gabeko sortaldea
sortu nahi izan dutenen esperantza
eramango nuke nerekin.
Olatuen dantzara irekiko nuke arima
haien joan etorrian
haiengan bizitzerik banu.
Olatuen melodiari irekiko nioke bihotza
denboraren gelditzearen ezina
abestu ahal banio
denbora preso hartu duen munduari.

## Negarra

Egutegi batek isuri dezake malkorik,
joanaren joanaz
edo joanaren ezaz.
Gutun batek malkotan amai dezake,
jarraipenaren ezaz
edo helmugarakoan galtzeaz.
Baina nork eman dizu
negar epeletan ezkutatzeko eskubiderik!
Nondik nora denboraren gonapean
malkotan uzkurtzeko pribilegiorik!

## Irribarrea

Maizegi egiten dugu irribarre
zoriontsu izateko,
zoriontsu izanagatik
irribarre egin beharrean.
Zorigaitzaren gaitz erditzat dugun irribarrea
ontzat ematen dugu,
zorionaren gaitz osoa dela
ahaztearekin batera.

## Heriotza koldarra

Zer balio du
baldintzazkoan izkiriatutako bizitzak.
Zer balio du
heriotzara atzera begira iritsi den bizitzak.
Bizitza bat balio al du
heriotza huts batek.
Heriotzak hartuko al du
jaio ez den bizitza huts bat.
Zenbatean salduko dio heriotzak duintasuna
jaio ez den bizitza huts bati.
Zenbat bizitza duinen trukean.

## Nahi eta nahi ez

Goranzkoa dugu
norabide bakarreko bide
beherakoa atzeraka joatea denean,
atzeranzkoa zakua bete gabeko
itzulera hutsa denean.

Goranzkoa dugu
behera begiratzean,
joan ezean
eramanak gera,
eramanak nahi eta nahi ezean,
baita goran otsoa beha dugunean.

## Adimenaren hegoak zabaltzearekin

Adimen zarpailduen artean
borroka **bizitzea** da
**Bizitzara** iristeko
**bizi** beharreko tartea
eta **Bizitza** jomuga da
jomugarainoko tartea **bizi** ahal
izateko euskarria bera.

Adimen zarpailduen artean
lanbidea **bizi** tarte honetaz
**Bizitza** bat egitea da
eta lanabesa adimenaren hegoak dira.

Adimen zarpailduen artean
adimenaren hegoak zabaltzea
Bizitza irabaztea da
Adimen zarpailduen artean
borroka **Bizitza** baita.
**Bizitzaren**
**bizia**
**bizitzea**.

## Balada bat

Adiorik gabeko malkoak
hertsitako iturriko tanta ahantziak haina
maiztatzen du.
Baina ez da eria.
Ez da gabea.
Ez da berria.
Bizitzako hamaikagarren udazkena da.
Gogoan arrastoa da.
Errautsetan balada bat da.

## Etsaiarenenean

Zenbat gerra irabazi behar dira
indarkeria salatu ahal izateko,
zenbat herra
gerraz historia margotzeko.
Zenbat margo behar da
hitzak bizia har dezan.
Zenbat bizi itxi behar da
kartzela huts bat irekitzeko,
zenbat kartzela behar dira
atsekabeak etsipena besarka dezan,
zenbat kartzela
zenbat etsipen
herri aske bat asmatzeko.
Zenbat askatasun itzalpetu behar da
argiaz jabetza egiteko,
zenbat argiren jabe
gezurra itzalean ezkutatzeko.

Zenbat gezur behar da
egi handi bat osatzeko,
zenbat egi handi
gezur txiki batzuen lotsa ezkutatzeko.
Zenbat gezur txiki eta lotsa ezkutatu behar da
arrazoi ustezko batez ahoa betetzeko,
arrazoiez etsaiaren egia osatzeko.

Eta guk
zenbat arrazoi behar ditugu,
zenbat egi arrazoi bihurturik
gure egiaz zoriona egiteko,
zenbat atsekabe zoriona egi bihurtzeko.

**Momentu batez utzitakoa**

Nahi luke Haimarrek,<br>
mendi tontorretik urrunerako begiradaz<br>
zabal berdeen handitasunak besarkatzen zuen<br>
istant hartan<br>
utzitako gogo zatia orainean josi ahal izan.

Nahi luke Oierrek,<br>
segundo bakar batean lotsa, ezinegona, adorea,<br>
infernua eta eternitatea<br>
oparitu zizkien begi haien dirdiran utzitako<br>
egiaren zatia<br>
mirilatik sartzea.



Nahi lukete Mikel eta Sarak,
osotasun eta orotasun hark
askatasunak izkinaren bueltan izan behar zuela
besterik esan nahi ez zuen sentimendu hura
astelehen gatibu batean hasi eta amaituko ez balitz.

Nahi luke Jonek,
irri batean okertzen zen aitaren ahoak
eskaintzen zion baretasunak eta aurrerako
erregaiaren mirariak
biharkoan ere hor iraungo duela
ziurtatuko dion irririk topatu.

Baina haiek eta hainbatek gehiagok,
nahi luketenaren gaindik,
nahi ez luketenari hertsiki helduta darraite
denbora-hats batean utzi zutena berreskuratzearen
xerka.





**Andereñoari**

Aita,
mintzo zaion argazki bat dela
erantzun dio.

Baietz, egia dela!

Txikia izan arren ikasi duela
egia ez dela euriaren pare
zerutik erortzen.
Egia egiten dela.
Berak berea eginen duela.
Aitarena ere eginen duela.
Aita egi-zurtzen zaindari da-eta.

Baietz, badela!

Gaur gauean aitari
kontatuko diola
txikia izan arren ikasi duela
besarkada bat egi egiteak
zenbat kosta duen.
Arren eskatuko diola
aitaren argazkiari
muxua gaurkoan ere
lotarako orduan.

## Negua luzatu zaigu

Lagunaren etxean ez da giro
Herio kanpaiak berpiztu dira astiro
Negua luzatuko dela esanaz berriro.

Beroak ohi dira
lagunaren etxeko paretak.
Hotzagoak eta garaiagoak hemengoak.
Maitasuna dute gorde haiek.
Maitasunetik gaituzte gordetzen hauek.
Hala izaten da
egunaren argia joan artean.

Izanak izan,
beste kontu bat da gauekoa.
Paretak pareta,
izarrek berdin berotzen dute
hemen eta han.
Kontuak kontu,
begiak ixtean
hango beroa suma da hemen
hemengo paretak hazi han.
Eta izarrak izar,
malko txiki bat sortu du
sortu berri den izar batek
hemen eta han.

**Ene etxea**

Nere etxea ez da
bere garaian zena.
Ni ordea banaiz Etxe hartakoa.
Baina nere oraingo etxeak
ez du teilaturik,
eta nora haizea
hara doa nere etxea.
        Guda lubaki baten begi ikaretan.
        Iraganaren altzoan.
        Maitasun amestu baten sugarrean.
        Tristezi sakon baten itzaletan.
        Gero malkartsuaren magalean.
        Eta haren edertasunaren handitasunean.
        Min zorrotz baten puntan.
        Biharko haurraren imajinazioan.
        Harrizko harresi baten historian.
        Idatzi gabeko hitzetan.
Baina batez ere
nere Etxea zaintzen duen
egunaren baitan
izaten dut ene oraingo etxea.

## Poztasun inkonprenitua

Badira pertsonak
egunak alaitzen dituztenak.
Badira egunak
pertsonak alaitzen dituztenak.
Gehiago dira ordea
pertsonak eta egunak,
pertsonak zein egunak
petraltzen dituztenak.
Apartekoa da aldiz ikustea
hain balantza desorekatuan
alaitzen duten pertsona eta egunek
galtzaile izanik ere
nola irauten duten gehiago denboran.
Batzuetan hainbeste dute irauten
ezen,
alaitzen duten egun eta pertsona
bakoitzetik hurrengora arteko
pertsona eta egun petral guztiak
ia ahazten diren.

Hara, zerk nola duen
bizitza hau irribarretsu.

## **atara**miñe formato txikian

LANA:
El silencio del infierno
EGILEA:
Fernando Alonso
URTEA:
2003

LANA:
Gosea lagun, laguna
EGILEA:
Segapoto kolektiboa
URTEA:
2004

LANA:
Lunaren Goiztiri
EGILEA:
Juan Luis Mugertza
URTEA:
2005

LANA:
Claude Gueux
EGILEA:
Victor Hugo
ITZULTZAILEA:
Zorion Zamakola
URTEA:
2007

LANA:
Kartzelako neurriak
EGILEA:
Urtzi Zubizarreta
URTEA:
2008

**Ezaren aldea**

Gogoaz bizitza bat egitea
ez da erraza.
Baina barrote artetik eskua aterata
ezin harrapatu daiteke
haizeak darraien bizi kordelik.
Usain zipriztinik bai.
Kolore zantzurik ere
itzalik gabeko egun oskarbietan.
Euri tantez ez du inork ordea
pitxar egarriturik bete.

Urtzi Zubizarretaren lehen liburu honetan, espetxearen hertsitasun inposatuan nekez kabitzen den pertsona bizi eta emankor baten isla aurkituko du irakurleak. Ziega arrotz hutsak, bakartasun ezin saihestuak, borrokarekiko konpromisoa, kidetasunaren garrantzia... mintzagai.

Naturatik at dagoen zementuzko mundu irreal horretan, ezer ez da kalearen pare, berdin: kartzela den mundu surrealistako neurriak, gatibuarentzat ikasi beharrekoak izango dira biziraun nahi badu, eta horiek irakurleari transmititzen saiatuko da Urtzi liburu honen bitartez.

ataramiñe